# JOAN BATEATZAILEAREN JAIOTZA



**Otoitza**
Oi Jainko,
zeure Semearentzat herri on-ona prestatzeko
sortu zenduan Joan Bateatzaile santua;
emoiozu zeure herriari espiritutzko pozaren dohaia
eta eroan egizuz zeure fededun guztien gogoak
bake- eta salbazino-bidetik.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.




**Sinisten dot esango da.**

Oparien gainekoa
Emoitzez bete dogu, Jauna, zure altarea San Joanen

jaioteguna egoki ospatzeko, berak esan eban-eta
munduaren Salbatzailea hurrean egoala, baita erakutsi ere, ha etorri zanean. Errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Prefazioa**

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea, Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Honen bidegile
eta ama guztien semeen artean handiena dan
Joan Bateatzaileagan zure miragarriak goresten ditugu. Jaiotzan poz handia ekarri eutson munduari;
eta jaio aurretik ere
amaren sabelean salto egin eban pozez,
gizon-emakume guztien Salbatzailea etorri jakonean; profeta guztien artean, bera izan zan
Jainkoaren Bildotsa ezagutzera emon eban bakarra.
Berak bateatu eban Jordan ibaian Bateoaren egilea, urari salbazino-indarra emongo eutsona,
eta odola isuriz egin eban autormenik handiena Kristo Jaunaren alde.
Horregaitik, zeruko indar guztiekin, lurrean beti eta beti goresten zaitugu, Zuri, Jainko guztiz handi horri,
eten barik [esanez] kantatuz:
Santu, Santu, Santua,

**Jaunartze ondorengoa**

Zerutar Bildotsaren mahaian indarbarritu gaituzu, Jauna; egizu, Joan Bateatzailea santuaren jaioteguna
pozez ospatzen dauan Eleizeak
hartu dagiala bere salbazinoaren egiletzat
Joanek etortzekoa zala aldez aurretik iragarri eban ha. Errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta
beti guk Zuri eskerrak e-mo-te - a, Jauna, Aita guz - tiz san - tu,
Jainko ahalguztidun betiko ho-rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren
bi - tar - tez. Ho-nen bi-de-gi - le eta ama guztien semeen artean
han-di - e - na dan Joan Bateatzaile - a - gan zure miragarriak
go-res - ten di-tu-gu. Jai-o-tzan poz handia ekarri eutson mun-du-
a - ri; eta jai-o aurretik ere amaren sabelean salto egin e-ban po-
zez, gizon–emakume guztien Salbatzailea etorri ja - ko - ne - an;

profeta guztien artean, bera i-zan zan Jainkoaren Bildotsa ezagutzera

e-mon e - ban ba - ka-rra. Be - rak bateatu eban Jordan ibaian

Bateoaren e-gi-le - a, urari salbamen–indarra emongo eu-tso-na,

eta odola isuriz egin eban autormenik handi-e-na Kris - to Jau -

na - ren al-de. Horregai-tik, zeruko indar guz-ti-e-kin, lurrean

beti eta beti goresten zai-tu-gu, Zuri, Jainko guztiz handi ho-rri,

e - ten ba - rik kan - ta - tuz: